# ZEBARRI

etxebarriko euskaltegiko ikasleek egina

**2015-16ko negua**



## Puntu beltzak argitzen

Etxebarriko puntu beltz eta arriskutsuenak zeintzuk diren azalarazten saiatu gara

*Eta gainera:*

- *Artxandako jolas parkearen amaiera*
- *Bertsolari txapeldunak*
- *Taloa nola egin*
- *Euskaltegiaren historia ...*


etxebarriko EUSKALTEGIA

ULIBARRI euskaltegia

BFA DFB
Bizkaiko Foru Aldundia
Diputación Foral de Bizkaia
Kultura Saila
Departamento de Cultura

EUSKO JAURLARITZA
GOBIERNO VASCO
KULTURA SAILA
DEPARTAMENTO DE CULTURA

ETXEBARRI
UDALA
AYUNTAMIENTO

# aurkibidea



***ZEBARRI ETXEAN DOAN JASO NAHI BADUZU, IDATZI MEZU BAT euskaltegia@etxebarri.net HELBIDERA***


*Zebarri aldizkaria honako erakundeei esker gauzatu da:*

ULIBARRI euskaltegia
Etxebarriko EUSKALTEGIA
Etxebarri Udala Ayuntamiento
BFA DFB Bizkaiko Foru Aldundia Diputación Foral de Bizkaia Kultura Saila Departamento de Cultura
EUSKO JAURLARITZA GOBIERNO VASCO KULTURA SAILA DEPARTAMENTO DE CULTURA

# PUNTU BELTZAK ARGIZTATZEN

Etxebarrin eguneroko ibilbide eta pasealekuetan herritarrei segurtasun-eza, errespetua edo ibiltzeko zailtasunak sortzen dizkieten lekuak bildu nahi izan ditu ZEBARRIK artikulu honetan.



ZEBARRI hainbat biztanlerekin elkartu da, batek baino gehiagok adierazi izan duelako izandako esperientzia txarraren ondorioz sortutako izua, eta asko ez delako ausartu ere egiten bide hauetatik igarotzen beldurragatik, nahiz eta bidea laburragoa izan.
Gaia jorratu da sexuen arteko ezberdintasunik egin gabe, zeren beldurra dela-eta ez baita inor igarotzen ez emakumerik ez gizonezkorik. Beldurrak edo errespetuak ez du bereizketarik egiten.
Hala ere, kontuan hartu da herriko segurtasun-ezak eragin handiagoa duela emakumeengan gizonezkoengan baino.

“Puntu beltzak” izendatutako leku eta eremuak direla-eta, elkarrizketatu bakoitzari hiru galderari erantzuteko eskatu zitzaion:

- **Arriskutsuak iruditzen zaizkizun, beldurra sortzen dizuten edo bertatik urrunarazten zaituzten herriko eremuak aipatu eta deskribatu.**
- **Azaldu zergatik iruditzen zaizkizun leku horiek babesgabeak edo arriskutsuak,**
- **Zer jarduera egiten dira inguru horietan, zer egiten da bertan.**

Nabarmendutako puntuak sarritan leku urrunduekin eta bakartiekin loturik ageri dira, argitasun gutxi dute eta hiritartu gabe daude, edo bestela, auzoak erdialdearekin lotzen dituzten ibilbideetan daude, nahiz hiriaren erdialdean ere topa ditzakegun horrelako inguruneak. Jende gutxi ibiltzen den toki ilun, isil eta ordu jakin batzuetan hutsik aurkitzen diren beste puntu batzuk ere azpimarratu zituzten, esate baterako, zenbait aparkaleku eta lantoki (industrialdea), eguneko une batzuetan jarduera ugari baina beste une batzuetan bat ere ez dutenak. Igogailu ingurua, pasealeku eta aisialdi-eremuetako parke eta ibaiaren ertzeko tarte batzuk toki beldurgarritzat edo beldurra sortzen duten lekutzat jo izan dituzte.

Aipatu izan dituzten beste puntu deseroso batzuk kale eta kale-zulo estuak, zokoak eta kantoiak dira, irispide zaileko tokiak edo oztopo arkitektonikoak dituztenak eta ibilbide bakartiak, herritarrak ibiltzen ez direnak, eta beste pertsona batzuek naturalki ikusi edo kontrolatzeko aukerarik ematen ez dutenak. Emakumeak gaueko orduetan, eta beste inoren laguntzarekin ez bada, bertatik igaroko ez diren tokiak dira gehienak.




## KALE IZENDEGIA / CALLEJERO

| Kalea | | Kalea | |
|---|---|---|---|
| Acceso a la Iglesia kalea | D3E3 | Herriko plaza | D8 |
| Aita Eusebio Arzelai plaza | E8 | Iberbengoa kalea | E5 |
| Amezola kalea | E7E8E9 | Isabel Larrakoetxea kalea | E3 |
| Anboto kalea | G9 | Jose Maria Asensio kalea | E8 |
| Andalucia kalea | E3D3 | Jesús Mª Llona U. Parrokoa pl. | D7 |
| Andalucia zeharkalea | D2D3 | Lapurdi kalea | G5 |
| Antonio Epalza kalea | E7E8 | Legizamon auzoa | F7F8 |
| Araba kalea | G6G7 | Lezama-Legizamon kalea | G8G10 |
| Aragon kalea | D2 | Maribi Iturbe kalea | D3C5 |
| Arbolantxa kalea | D2 | Metacal kalea | D8E8E9 |
| Arimasolo kalea | E6 | Munepe kalea | E6E7 |
| Asturias kalea | D2D3 | Navarra kalea | D2 |
| Baleares kalea | D2 | Nerbioi kalea | F5 |
| Barrondo kalea | D7D8 | Oleta kalea | D1 |
| Behenabarre kalea | G7H7 | Patxi Bengoa plaza | E7E8 |
| Bernar Etxepare kalea | E6 | Pedro Lobato Alkatea | C8D9 |
| Bizkaia kalea | G5 | Presagana kalea | E9 |
| Canarias kalea | D3E3 | Sabino Arana kalea | F7E7 |
| Castilla kalea | D1D2D3 | San Antonio auzoa | D4 |
| Cataluña kalea | D2 | San Antonio etorbidea | C4C6 |
| Egetiaga Uribarri kalea | D7 | San Esteban etorbidea | D6D7 |
| Errekaondo kalea | C7C8 | Santa Ana kalea | D7 |
| Euskal Herria kalea | D5 | Santa Marina kalea | E2D3 |
| Extremadura kalea | D2D3 | Taberna Zaharra plaza | E7 |
| Forua Kalea | E5E6 | Tomás Meabe kalea | G10H11 |
| Fuenlabrada kalea | E7F8 | Uribarribarri kalea | E8 |
| Galicia kalea | D2 | Urkiola kalea | G9 |
| Ganguren Mendi kalea | C3C4B4 | Valencia kalea | D2 |
| Gipuzkoa kalea | H5H6 | Zintururi plaza | E3 |
| Gorbeia kalea | G8H9 | Zuberoa kalea | G6 |
| Gudari Desconocido plaza | E8 | | |

## PUNTU INTERESGARRIAK / PUNTOS DE INTERÉS

| | | | |
|---|---|---|---|
| Udaletxea | 1 | D7 | Ayuntamiento |
| Udaltzaingoa / Bake Epaitegia | 1 | D7 | Policía local / Juzgado de Paz |
| HAZ (Herritarrentzako Arreta Zerb.) | 1 | D7 | SAC (Servicio de Atención Ciudadana) |
| K.I.U.B. | 2 | D7 | O.M.I.C. |
| Gizarte Ongizate Saila | 2 | D7 | Servicio Social de Base |
| Hilerria | 3 | B2 | Cementerio |
| EUIZ Informatika Zentroa | 4 | D7 | Centro de Informática CIME |
| Arlo Soziokulturala | 4 | D7 | Área Sociocultural |
| Etxebarriko Euskaltegia | 5 | D7 | Euskaltegi Municipal |
| Bekosolo Haurreskola | 6 | D6 | Haurreskola Bekosolo |
| Zintururi Haurreskola | 7 | E3 | Haurreskola Zintururi |
| Kukullaga HLHI | 8 | C5 | CEIP Kukullaga |
| Kukullaga (Haur H) San Antonio | 9 | D4 | Kukullaga (E. Infantil) San Antonio |
| Kukullaga (Haur H) Barandiaran | 10 | D7 | Kukullaga (E. Infantil) Barandiaran |
| Etxebarri BHI | 11 | E2 | IES Etxebarri |
| HHI | 12 | D3 | EPA |
| Elkartegunea | 13 | D6 | Centro de Reunión Asociaciones |
| Kultur-Etxea | 14 | D3 | Casa de Cultura |
| Kultur Elkarteak | 15 | D4 | Asociaciones Culturales |
| Kultur eta kirol Elkarteak | 15 | D6 | Asociaciones Culturales y Deportivas |
| S. Antonio Udal Liburutegia | 16 | D3 | Biblioteca Municipal S. Antonio |
| Bekosolo Udal Liburutegia | 17 | D6 | Biblioteca Municipal Bekosolo |
| Mugarri Gazte-etxea | 18 | E3 | Centro de Juventud Mugarri |
| Tarrasta Topagunea | 19 | C4 | Tarrasta Topagunea |
| Etxebarri Goikoa Erretiratu-Etxea | 20 | D3 | Hogar del Jubilado Etxebarri Goikoa |
| Etxebarri Bekoa Erretiratu-Etxea | 21 | E7 | Hogar del Jubilado Etxebarri Behekoa |
| Udal Kiroldegia | 22 | B3 | Polideportivo Municipal |
| Udal Futbol zelaia | 23 | C7 | Campo de Fútbol Municipal |
| Frontoia | 24 | E7 | Frontón |
| S.Antonio Frontoia | 25 | E3 | Frontón San Antonio |
| Bekosolo Skate Pista | 26 | D6 | Pista de Skate Bekosolo |
| Osasun Zentroa | 27 | D5 | Centro de Salud |
| Doneztebe Parrokia | 28 | D7 | Parroquia S. Esteban |
| S. Antonio Parrokia | 29 | E3 | Parroquia S. Antonio |
| Sta. Ana Baseliza | 30 | F7 | Ermita Sta. Ana |
| Legizamon Jauregia | 31 | G6 | Palacio Legizamon |
| Amezola Jauregia | 32 | D7 | Palacio Amezola |
| Zubiondo Errota | 33 | F7 | Molino Zubiondo |

Behin identifikatu eta kokatu ostean mapan euren ikuspegiaren arabera ingurunea segurua dela esango da:

- **Non zauden eta nora zoazen jakin badezakezu.**
- **Zuk ikus edo entzun badezakezu eta besteek zu ikus edo entzun bazaitzakete.**
- **Ihes egin eta laguntza lor badezakezu.**
- **Ingurune abegitsu eta garbi batean bizi bazaitezke.**
- **Talde baten barruan jardun badezakezu.**

## Ikasleek nabarmendutako eremu eta puntu beltzen azalpena

Leku horiek hauek dira:

Urrun dauden auzo edo etxebizitza-multzoak, hiri-erdialdetik bereiziak, igogailua eta eskailera isolatuak eta gutxi hiritartuta dauden industrialdeak, hormen artetik doazen bideetatik, fabriken albotik, herritarrik ia ibiltzen ez den tokietatik eta eguneko ordu batzuetan inor ez dabilen lekuetatik barrena, zoladura egoera txarrean dutelako, espaloirik ez dutelako, argitasun gutxi dagoelako edo mantentze-lan nahikorik egiten ez delako.



## Pedro Lobato Kaleko zubia

Metrotik  Euskotrenerako zubi berriraino dagoen bidea Errakaondo industrialdea argitasun gutxi, egun argitan ondo ikusten da baina iluntzean eguna beldurra ematen du eta desatsegina egiten da.



## Tomas Meabe Kalea

Herritik urrun egiten da. Farolak egon arren ez dago argitasun handirik. Autoak egunez igarotzen dira, gauez ez da hala gertatzen eta sarri ardura sortzen du bertatik igarotzeak zeren bizilagun bat bera ez da sumatzen.



## Igogailua

Igogailuaren gunea jo da taldean ingururik arriskuentzat zeren egoerarik txarren guztiak betetzen ditu: isolatua, argitasun aldetik eskasa, norbaitek hartzen bazaitu igogailuan ez dado ihesbideri eta eskaileretako aukera ikustea baino ez dago.
Beste aldetik bertan dagoen bidezidorrak ere aukera ez du ematen iluna, ezatsegina eta edonondik ere urrun.



# SAN ANTONIO ETA ETXEBARRIKO EMAKUMEEN FUTBOL TALDEAK



Emakume futbol talde hau orain dela 9 urte sortu zen. Hiruzpalau urtez futbolean aritu ondoren, desagertu egin zen eta taldeko neska askok futbola utzi nahi izan zuten. Gauza berbera gertatu zen Kukullaga areto-futbol taldearekin.

Hori dela eta, Etxebarriko neska batzuk Basaurira joan behar izan zuten jokatzera. Jarraian, talde horretako bi futbolariren istorioa ezagutuko dugu: lehena, Olatz da; eta, bigarrena, Cristina.

**Olatz** Kukullagan hasi zen areto-futbolean jokatzen 14 urterekin. 3 urte eman zituen taldean, eta desagertu ostean, uztea erabaki zuen beste herri batera ez joateagatik.

**Cristina** San Antonio futbol taldean hasi jokatzen 13 urterekin. 4 urte eman zituen taldean, eta taldea desagertu zenez, batzuek futbola utzi zuten eta beste batzuek Basaurira joatea erabaki zuten. Cristina dugu horietako bat.

**Zergatik aukeratu zenuten futbola?**

**Olatz:** Niri txikitatik futbolean jolastea asko gustatzen zitzaidalako eta nahiz eta nire gurasoek hasieran onartu ez (nahiago zuten igeriketa egitea), gero ondo ikusi zuten.

**Cristina:** Niri betidanik ikaragarri gustatu izan zait baina ez nuen aukerarik izan. Hori dela eta, beste kirol batzuk egin behar izan nituen baina futbola beti izaten nuen buruan. Beraz, talde bat sortu zenean, pentsatu barik , izena ematea erabaki nuen.

**Taldea desagertu ondoren zer egin zenuen?**

**Olatz:** Erabaki nuen beste kirol batzuk egitea ez nuelako herritik atera nahi. Izan ere, denbora gehiegi behar nuen Basaurira edo Galdakaora joateko.

**Cristina:** Bada, nire lehenengo asmoa futbola uztea izan zen, baina, kontua izan zen nire lagunak Basaurira joan zirela eta nik haiekin jarraitu nahi nuela. Horregatik, gaur egun ere, Ariz Futbol Taldean jokatzen jarraitzen dut.

**Nola uztartzen dituzu ikasketak eta kirola, Cristina?**

Goizez unibertsitatera joaten naiz, eta, arratsaldez, euskaltegira joan ostean, entrenatzera joaten naiz. Astelehen eta ostegunetan izaten dira entrenamenduak; arratsaldeko 20:00etatik 21:30era.




**Olatz, Etxebarrin talde bat sortuko balitz, bueltatuko zinateke?**

Duda barik! Etxe ondoan entrenatzea eta futbolean jokatzea aukerarik onena da. Denbora gehiago izango nuke ikasketak eta kirola uztartzeko. Gainera, Etxebarrin neska futbol talde bat egoteak kirol hau sustatuko luke neskengan.

**Zer iritzi du jendeak emakumezkoen futbolari buruz?**

**Bien iritzia:** Egia da gero eta gehiago onartzen ari dela kirol hau neskentzat, baina, oraindik, asko gelditzen da egiteko. Beti izan da gizonei lotutako kirola eta erro eta ohitura horiek egun batetik bestera aldatzea asko kostatzen da. Athleticeko neska taldeak arrakasta izan zuenetik, neska asko animatu izan dira futbolean izena ematera. Argi dago horrelako gauzek asko laguntzen dutela, horrelako gauzek eta publizitatea edo telebistan emakumeen futbol partidak sarriagotan ikusi ahal izateak.

Anima daitezela Etxebarriko neskak futbolean aritzera! Lagunak egiteaz gain, kirol dibertigarria eta osasuntsua baita!

**B2ko arratsaldeko hankapilotazaleak**



# Txakurkrosa



**Urriaren 22an, nahiz eta eguraldi euritsu samar izan, 80 korrikalari inguru, beren txakurrek lagunduta, Etxebarrira gerturatu ziren SAN ANTONIOKO IV TXAKURKROS LASTERKETAN parte hartzera. Aurten gainera, EUSKADIKO I. TXAKURKROS LIGAKO lasterketa bat izan da.**

**Mikel Etxeberria, zumaiarra, eta SURO txakurra izan ziren garaileak, lasterketaren 8 kilometroei menditik barrena aurre egin ondoren.**

Baina zertan datza, edo zer dira **TXAKURKROS** lasterketak? Horrelako lasterketetan korrikalaria eta txakurra bat dira, araudi asko bete behar dituen talde finko eta sendo bat. Arrazoi hauexengatik:

**TXAKURRA:** arraza guztien partaidetza onartzen da, Urte bateko adina gutxienez izan eta sasoi onean egon behar du. Lasterketa hasi baino lehen, albaitari-kontrolean, txakurraren txertoen kartilla eguneratua eta derrigorrezko mikrotxiparen ziurtagiria aurkeztu behar dira....

**EKIPAMENDUA:** parte-hartzaileek derrigorrezko zenbait material eraman behar dituzte soinean, besteen artean: txakurkros gerrikoa, kirolarien gerrian jantzekoa irekitze azkarrako mosketoiduna, txakurra uhala lotzeko. Uhala ezin da 2 metro baino laburrago eta 3 metro baino luzeagoa izan. Txakurraren arnesak, txakurrak ez apurtzeko eta ihes ez egiteko nahiko gogorra nahiz erosoa izan behar du. Kasuak kasu, muturrekoak erabili ahal dira.

**LASTERKETA:** 2 eta 10 kilometro artekoa izan behar du eta laburragoa edo luzeagoa izango da, tenperaturaren zein den, hau da: zenbat eta tenperatura handiagoa, orduan eta lasterketa laburragoa. Gainera, 22 graduak gainditzen dituzten egunetan ez da lasterketarik egingo.
Lasteketa hauen beste ezaugarri bat da ibilbideak albaitariek baieztatua izan behar duela, eta ibibide honetako %90ek gutxienez bidexketatik eta mendi pistetatik igaro beharko du.
Badaude lehiakideek bete behar dituzten beste arau batzuk, lasterketa behin hasita:

kirolariak beti txakurraren atzetik egin behar du korrika, bere alboan kokatu gabe. Ezin dio ere txakurrari tira egin, oztopoak gainditzeko edo txakurra ibilbidera itzultzeko izan ezik.

Ikus dezakegunez ezohiko ezaugarri asko dituzte txakurkros lasterketek,baina hala eta guztiz ere, aparteko giroa dago eta oso ikusgarriak dira. Izugarriak ere.

Hurrengo edizioa heltzeko irritikan gaude jada!

C1eko ikaslerik biiiiiiiiiizkorrena



# IBONI ELKARRIZKETA



**Oraingoan, Etxebarriko euskaltegian izerdiaz eta malkoez euskara ikasten are garenon zaindari handienari elkarrizketa egitea ezinbestekoa iruditu zaigu. Bere izena Ibon da, eta egunero euskaltegian guztiez arduratzen den pertsona da.**

**Ibon 1978 jaio zen Sestaon. Etxebarriko euskaltegian 10 urte daramatza, 2005ean hasi baitzen. Berak administrari era irakasle egiten du lan eta gainera guztia koordinatzen du.**

**Hau da gure taldeak egiten dion elkarrizketa:**

**Vanesa: Noiz sortu zen Etxebarriko euskaltegia?**

Oker ez banago 1994an sortu zen.

**Maria: Zergatik sortu zen euskaltegia?**

Gaur egun, eskoletan umeek euskaraz hitz egiten dute, baina lehen ez zen derrigorrezkoa irakaskuntza publikoan. Orduan, beharrezkoa zen Etxebarrin euskara ikasi ahal izateko leku bat edukitzea, eta ondorioz euskaltegi hau sortu zen, Etxebarri euskalduntzeko helburuarekin.

**Jose: Sortu zenetik beti egon da Ulibarri Euskaltegia?**

Ez. . Lehengo udal euskaltegia izan zen. 2005ean Etxebarriko Udalak konkurtsoa ateratzea erabaki zuen eta Uribarri Euskaltegiak irabazi zuen. Hala ere, udal euskaltegia izaten jarraitzen du, nahiz eta kudeaketa Ulibarri Euskaltegiak egin. Ordutik hemen gaude.

**Chicho: Nola funtzionatzen du?**

Lau urtetik behin lehiaketa publikoa egiten da, eta lehiaketa horretara aurkezten ahal dira euskal herriko nahi duten euskaltegi guztiak. Orduan, udaleko teknikariek puntuazioak ematen dituzte, eta gero ekonomikoki errentagarriena den euskaltegia aukeratzen dute. Guk 4 lehiaketa inguru irabazi ditugu. Lehiaketa hauek 4 urtetik behin izaten dira, beraz, kontuak egiten baditugu ez du zentzurik, 4 x 4 = 16 delako eta guk 10 urte daramagulako. Hau gertatu da lehiaketaren pare bat aurreratu egin direlako.

**Lorena V.: Nolakoa da euskaltegia?**

Azken lehiaketan oso garrantzitsuak izan dira baliabide teknologikoak, horri inbertsio handia egin dugu: tabletak, proiektoreak, internet konexio berria, .. pasatu gara kaseteekin ibiltzetik, punta-puntako teknologia erabiltzera. Momentu honetan beste euskaltegi batzuekin



konparatuta Etxebarriko euskaltegia teknologia modernoagoa erabiltzen du.

**Lorena H.:Zenbat jende etortzen da?**

Aurten bagara 11 irakasle, baina batzuk ez daude egun osoan hemen, Etxebarrin egoten. Batzuk hemen goizez lan egiten dute, eta arratsaldez beste leku batzuetan edo alderantziz. Ikasleak, berriz, oraintxe bertan 160 dira goizetan, arratsaldeetan eta BOGAn banatuta.

**Iratxe: Urteekin gehitu egin da kopurua?**

Iaztik hona bai. Gu hasi ginenean 120 bat ikasle egon ziren. Baina errekorra 220 izan zen, duela 6-7 urte. Egoera jakin batzuen araberakoa izaten da. Adibidez,laster oposaketak egongo dira eta horiek amaitzean uste dut jende gehiago etorriko dela.

**Laura: Nolakoak dira ikasleak?**

Gehienak emakumezkoak izaten dira 30-40 urte bitartekoak, eta horietako asko amak hain seme-alabekin hitz egiteko.

Goizez jende askoz gehiago etortzen da eta hori oso bitxia egiten zait. Hain zuzen ere goizetan 6 talde daude, eta arratsaldeetan 2 besterik ez.



**Esti: Zenbat ikasle aurkezten dira azterketetara?**

Urtero aldatzen da, adibidez aurten, 40 inguru aurkeztuko direla pentsatzen dut. Jende asko hasi berria da, beraz,haiez ezin dute oraindik azterketa egin. Hala ere, beti erdia baino gutxiago aurkezten da. Egia esan, ikasleen helburua normalean ez da izaten titulua lortzea, euskalduntzea baizik.

**Sole: Ze ekintza interesgarri egiten dira bertan?**

Urtero ospatzen ditugu: Abenduaren 3an euskararen eguna, Otsailaren 4an Agate Deuna makila eta guzti, inauteriak mozorrotuta, eta azkenik Maiatzaren azken ostegunean euskaltegiaren jaia. Pasa den ikasturtean beste hainbat ekintza egin genituen, adibidez: zinema zikloa, bertan filma batzuek ikusi genituen euskaratuta; hitzaldi bat ere egin genuen txirrindulari ospetsu bat etorri zen bere bidaiak kontatzera. Gainera, aurten Santomasak ere ospatuko ditugu.

**Jaione: Nola hartzen dute parte ikasleek ekintza horietan?**

Ba oso ondo. Adibidez Agate Deunan makilak eskuan kalera ateratzen gara eta gela bakoitzak bere bertsoa abestu behar izaten du. Beste ekintzak, aldiz, umeen oporrak kontuan hartuta antolatzen hasi ziren besteak beste inauteriak.

**Luisa: Umeekin ekintza berezirik egiten duzue?**

Bai. Badaukagu irakasle bat San Antonion egunero ikasle etorkinei euskara klaseak ematera joaten dena. Ume etorkinak, euskara hitz egiten ez den leku batetik etorritakoak dira, Kolonbia, Bolivia, Palentzia, Bartzelona.… eta errefortzu bezala hartzen dituzte klaseak. 20 bat ikasle daude.

Gainera, badago beste ekintza bat irailean egiten dena. Institutuko Ikasleak oporretan daudela aprobetxatuta, 3 eguneko ikastaro berezia egiten da, udan ahaztu duten euskara berriro praktikatzeko.

**David eta Jose Luis: Zein etorkizun ikusten diozu Etxebarriko euskaltegiari?**

Elkarrizketa honi ezker petatuta egongo da…..(kar,kar,kar…)

Ez, euskaltegien helburua izaten da luzea desagertzea izan ere horrek esan nahiko luke jende guztiak jakingo eta hitz egongo lukeela euskara.

Orduan, euskaltegiok berrasmatu beharko dugu eta egoerari egokitu.

# AMAITU DA JOLASA



***40 urtez  ondo-ondoan eduki dugu, Etxebarriko txoko guztietatik ikusten ziren bere piramideen puntak. Orain betiko desagertuko da Artxandako Jolas Parkea. ZEBARRIn omenaldi txiki hau egin nahi diogu.***

1974ko irailaren 14an zabaldu zen Artxandako jolas parke. Europako jolas parkerik onena eta modernoa zen.

1972ko uztailaren 28an “Parque de atracciones de Vizcaya S.A” izenekoa sortu zen eraikina egiteko eta esparrua ustiatzeko.

1973ko uztailaren 9an hasi ziren lanak eta 14 hilabetean egin zuten parkea. 3,1 euroko inbertsioa egin zuten.

Jolas parkeak adin guztietarako atrakzioak zeuzkan. Umeek tiobiboetan poz-pozik, kartingean ere gozatu ahal zuten; nagusiek, ordea, errusiar mendian, har eroan, mamu-trenean eta abarretan. Gainera, esparruak aparkaleku handi bat zeukan, kafetegi bat eta jatetxea, zerbitzu guztiekin, etxetik kanpo egun osoa pasatu ahal izateko.

Etxebarriko eta inguruko herrietako jendeak leku bat nahi izaten zuen beti dibertsiorako, eta haiei esker lortu zuten , horregatik denbora luzean erreferentea izan zen hemengo jendearentzat.

Urtero jolas berri bat ipintzen saiatzen ziren, bisitari gehiago erakartzeko. 1975ean auditorioa eta zoo txiki bat zabaldu zuten, eta 1978an Bizkaiko igerilekurik onena amaitu zuten.

Baina itxaropenak ez ziren pentsatu bezain onak izan. 1982tik 1984rako krisia erabakigarria izan zen parkearen gainbeherarako. Baina hori ez zen izan arrazoi bakarra: parkea ez zegoen zentrotik hain hurbilk, guztiok nahi genuen moduan. Hara joateko autobusa hartzea beharrezkoa zen eta bere prezioa garestiegia zen, ia ia sarrera bezain garestia.



Eguraldiak ere ez zuen laguntzen. Azken urteetan zabalik egoten zen egunero martxotik irailera, baina nahiz eta ahalegin handiak egin ez ixteko, 1990ean erabakia hartu zuten.

Orain hondamendia dago bakarrik, eta instalazioak artxibo eta biltegi bezala erabiltzen dira. Baina laster hasiko dira dena botatzen.

Bakarrik gure oroitzapenetan gogoratuk dugu gure haurtzaroko parkerik onena izan zena.

Euskaltegiko ikasle asko egon zen parkeaz gozatzen zabalik egon zen bitartean. Batzuei galdera batzuk egin dizkiegu, beren iritziak jakiteko.

**1 Zenbat urte zenuen lehenengo aldiz joan zinenean?**

**2 Zer gogoratzen duzu?**

**3 Zure ustez leku onean zegoen?**

**4 Zer iruditzen zaizu kentzea?**

**5 Zer egin ahal da instalazioekin?**

**Ana (40 urte)**

1 - 10 urte nuenean joan nintzen lehenengo aldiz.

2 - Oroitzapen gutxi daukat parketik

3 - Ez, zentrotik hain hurbil ez zegoelako eta gainera errepidea oso estua delako, horregatik aste buruetan auto-ilara handiak sortzen ziren. Eguraldiak ere ez zuen laguntzen.

4 - Pena handia ematen digu baina badakigu ixtea beharrezkoa dela gastu guztiak ordaintzeko.

5 - Instalazio horiek kendu ahal dira eta leku hori utzi mahaiak, barbakoak eta kolunpioak ipintzeko.

**Iñaki (59 urte)**



1 - Uste dut 20 urte nuela

2 - Gogoratzen dut kontzertu batzuk ikusi nituela eta jende asko joaten zela.

3 - Igerilekura ere joan nintzen Etxe barrin ez zegoelako.

4 - Niri pena ematen dit, nire bizitzako zatitxo bat delako.

5 - Parke natural bat egin ahal da, umeak ondo bizitzeko.

**Carlos (43 urte)**

1 - 6 urte nuela

2 - Oso handia zela gogoratzen dut, atrakzio batzuk eta zoo txikia.

3 - Lehen ez, lehen  jende askok kotxerik ez zuelako. Orain bai.

4 - Asko sentitzen dut, oroitzapen asko daukadalako.

5 - Parke berria egitea da onena.



**Ana (46 urte)**

1 - 6 urte nuela

2 - Markoren binilozko disko bat oparitzen zuten, lehenengo urtea zelako. Sarreran tiketak ematen zituzten, jolasetara igotzeko.

3 - Uste dut ezetz. Ni parkera joan nintzen oinez Galdakaotik.

4 - Triste nago itxiko dutelako.

5 - Parke berria egin behar dute.

**Yoli (43 urte)**

1 - Uste dut 7 edo 8 urte nituela.

2 - Gogoratzen dut jantokia, nabe espazial bat bezalakoa zelako.

3 - Uste dut lekua ez zela txarra, baina hemen ez da ideia ona parke bat egitea teilaturik gabe.

4 - Normala da, zahar dago eta beste gauza batzuk egin ahal dituzte.

5 - Beste parke bat, baina estalita.

**Euskaltegiko ikaslerik lanpetuenak**

# ETXEBARR



- ETXEBARRI -

Hello Peter,
How are you? Hemen ezin hobeto.
Orain Udaletxeko plazan gaude kafe bat hartzen. Neska-mutilak futbolean jolasten ari dira. Gaur Etxebarrin eguraldi ederra egiten du, horregatik pintxo-potea egitera joango gara.

Eta zu, zer? Pub batean zaude Guiness batzuk edaten? Beti bezala euria ari du? Cheers!

Besarkada handia eta goraintziak eman *Patriziori.

See you soon!

*

San Patrizio: Irlandako patroi na
eta leku askotan, ez bakarrik Irl

*

Flavio Briatore: enpresari italiar e
Cerdeñako kostaldeko herri turis
handia dauka. Leku honetara fan



Hallo Annette!

Wie geht's? Gu oso ondo gaude. Orain Kukullagako parkean gaude ibilalditxo batean txakurrarekin. Parkea oso polita da. Aste honetan euria ari du eta zuhaitzak orlegi-orlegi daude. Hemendik jende asko ikusten dugu. Jendea normalean ordu honetan polikiroldegira joaten da kirola egitera. Polikiroldegiak hamar urte bete ditu. Bertan herriko jendeak ekitaldi asko egin ahal du, adibidez, igeri egitea, padela, dantza... Gero autobusa hartuko dugu metrora joateko.

Eta zu, zer egiten ari zara? Kampnagel antzokira joango zara antzezlanen bat ikustera? Nola dago eguraldia? Kontuz elurrarekin.

Besarkada zuretzat eta goraintziak eman *Hummel jaunari.

Bis Bald!

KUKULLAGA

*

Hum
Hirik
herr
agu

# RITIK MUNDURA...

agusia. Martxoaren 17an du eguna
andan, ospakizun handia dago egun honetan.




Ciao Fabiana,

Come stai? Gu primeran gaude. Orain San Antonioko behatokian gaude lagun batzuekin. Hemendik ikuspegi onak daude. Hemengo jendea oso alaia eta etxekoia da. Egun hauetan eguraldi ona egiten du. Gero Viverora joango gara oinez eta bertan otarteko batzuk jango ditugu.
Eta zu, zer? Porto Cervon zaude? Esan digute kostaldeko herri txukuna dela eta turista asko dagoela. Kontuz diru-txartelarekin, ez gastatu gehiegi.
Bueno, asko zaindu eta goraintziak eman Flavio *Briatoreri.

Ci vendiamo presto!

zaguna. Porto Cervo
tikoan Billionaire diskoteka
natuak hurbiltzen dira.

nmel: urketaria eta Hamburgo hiriko pertsonaia xelebrea, erretxina.
ko leku askotan dago pertsonaia honen irudia. Hamburgoko lagunek
itik kanpo elkar ikusten dutenean, «Hummel, Hummel» leloarekin
rtzen dute elkar.

... postalak (1. urratseko ikasleak)

# BIZKAIKO MUSEO EZEZAGUNAK

Gabonetako oporretan ohikoa izaten da planak egiten hastea. Plan hauen artean mendira joatea, ezagutzen ez dugun herri edo hiri bat bisitatzea, antzerkira joatea eta batzuetan museo batera joatea bururatzen zaigu. Normalean burura etortzen zaizkigun museoak Guggenheim eta Arte Ederretakoa izaten dira, eta zergatik ez hain ezagunak ez diren museoak? Ez dira ospetsuak, ez, baina oso interesgarriak dira eta Bizkaian asko daude gainera.

**HONA HEMEN BEREZIAK IRUDITU ZAIZKIGUN 6 MUSEO TXIKIREN INGURUKO INFORMAZIOA. ZUEN GUSTUKOAK IZATEA ESPERO DUGU.**




## ARRANTZALEEN MUSEOA

Bermeoko Portu Zaharreko Ertzilla Dorre historikoaren barruan daukagu museo bitxi hau 1948. urtetik. Honen moduko museo gutxi dago munduan, euskal arrantzaleen bizitza, lana, ohiturak eta arrantzatzeko teknikak erakusten baitizkie bisitariei. Gainera bertan Euzkadiko Gudontzidiaren historiari buruzko informazioa ikusi ahal dugu, euskal arrantzaleek osatu zutelako armada horren oinarria.

| ORDUTEGIA |
|---|
| Astelehenak: **Itxita** |
| Asteartetik larunbatera: **10:00-14:00/16:00-19:00** |
| Igandeak eta jaiegunak: **10:00-14:00** |

| PREZIOAK |
|---|
| Orokorra: 3€ |
| Murriztua: 1,50€ (26 urtetik beherakoak, 60 urtetik gorakoak, ahalmen urrikoak, langabeak, erretirodunak, familia ugariak, eta 10 lagunetik gorako taldeak) |
| Doan: 12 urte artekoak. |

### INGURUAK

- Mundakako itsasadarra
- Santa Katalina baseliza
- Mundaka
- Gaztelugatxe
- Matxitxako
- Sukarrieta
- Bakio: Txakolingunea

**Arrantzaleenmuseoa@bizkaia.eus 94 688 11 71**
**www.facebook.com/arrantzaleenmuseoa**



## BAKEAREN MUSEOA

Museo interesgarri hau Gernikan dago eta bakearen kultura sustatzea da bere helburu nagusia. Gernikak gerra zibilean jasandako bonbardaketan dago oinarrituta. Areto batzuk daude eta guztietan material bitxia ikusteko. Baina bitxiena da bonbardaketa bat simulatzen duen ikus-entzunezko muntaia.

| ORDUTEGIA |
|---|
| Astelehenak: **Itxita** |
| Asteartetik larunbatera: **10:00-14:00/16:00-18:00** |
| Igandeak eta jaiegunak: **10:00-14:00** |

| PREZIOAK |
|---|
| Orokorra: 5€ |
| Murriztua: 3€ |
| Doan: 12 urte artekoak. |

### INGURUAK

- Kortezubiko Marco Pollo garagardotegia
- Omako basoa
- Santimamiñeko kobazuloak
- Basondo animalien parkea

**www.bakearenmuseoa.org 94 627 02 13**



## HONTZA MUSEOA

Bizkaiko Natur Zientzien museoa Mañarian dugu. Enrike Huerta malakologo durangotarraren proiektu personala da. Irakasle erretiratu honek bizitza osoan bildutako alez osatuta dago erakusketa didaktiko hau. Gaur egun bi erakusketa mota ikusi ahal dugu, bat finkoa da eta 451 ale dauzka, eta bestea urtez urte gai baten gainean antolatzen dute. Aurten 5 kontinenteetako moluskoak dituzte ikusgai.

| ORDUTEGIA |
|---|
| Astelehenak: **Itxita** |
| Asteartetik ostiralera: **17:00-19:00** |
| Larunbatak: **11:00-13:00/17:00-19:00** |
| Igandeak eta jaiegunak: **11:00-14:00/17:00-19:00** |

| PREZIOAK |
|---|
| Orokorra: 3€ |
| Murriztua: 2€ (12-15 urte bitartekoak, erretiratuak eta pentsionistak, ikasleak, langabeak eta Euskalherriko museoetako langileak) |
| Doan: 12 urte artekoak. |

### INGURUAK

- Durango
- Arrazolako bide berdea
- Baltzolako kobazuloak
- Urkiolako santutegia

**Hontza@hontzamuseoa.eus** **946 21 65 55**



## BALMASEDAKO LA ENCARTADA MUSEOA

La Encartada lantegi-museoa Balmasedan kokatzen da. 1892an sortu zen herriko indiano bati esker. Bertan artilezko puntu-lanak egin zituzten 1992. urtean itxi zuten arte. Adibide bereizgarria da benetan Bizkaiko industria sarean eta euskal ehungintzaren adierazgarri garrantzitsua. Izan ere, lantegi honetatik ateratzen ziren euskal gizon askok janzten zituzten txapela ospetsuak.

| ORDUTEGIA |
|---|
| Astelehenak: **Itxita** |
| Asteartetik ostiralera: **10:00-14:00** |
| Larunbatak: **10:30-19:00** |
| Igandeak eta jaiegunak: **11:00-15:00** |

| PREZIOAK |
|---|
| Orokorra: 5€ |
| Murriztua: 3€ (ikasleak, erretiratuak eta 6 urtetik beherako umeak) |
| Doan: 12 urte artekoak |

### INGURUAK

- Balmasedako alde zaharra
- Sopuertako Abentura Park
- Lanestosa
- Karrantzako El Karpin fauna iberikoaren parkea eta Pozalaguako Kobazuloak

**Mj.torrecilla@laencartadamuseoa.com** **946 80 07 78**

## LOIZAGA TORRE MUSEOA



Erdi Aroko torre izugarri batean aurkituko dugu antzineko auto bilduma pribatu inportantea. Loizaga Torrea Galdames herriko Concejuelo auzoan eraikin zen XIII. mendean. Bandoen arteko gatazkan ganboatarrek zuzentzen zituzten handik etsaien kontrako erasoak. Mendeak pasa eta XX. mendean Galdamesko enpresaria zen Miguel de la Viak torrea zaharberritu zuen. Gaur egun Europako autoen museo garrantzitsuenetarikoa da Rolls Royce modelo guztiak baititu.

| ORDUTEGIA |
| --- |
| Astelehenatik larunbatara: **Itxita** |
| Igandeak eta jaiegunak: **10:00-15:00** |
| Abenduko zubian ere bai |

| PREZIOAK |
| --- |
| Orokorra: 7€ |
| Murriztua: 4€ (jubilatuak eta 12 urte gorako umeak) |
| Doan: 12 urte beherako umeak |

**INGURUAK**

- Gueñes
- Galdemesko bide berdea Gallartaraino
- Artzentalesko bide verdea
- Zallako Paint Ball Cluba

**www.torreloizaga.com** **649 41 20 01**

## MEATZARITZA MUSEOA



Gallartan dagoen museo interesgarri hau 1986an sorturiko kultur elkarte batetik abiatu zen. Elkarte hori meatzari ohiek eta siderurgiako beste langile ohi batzuek osatu zuten ordurarte Bizkaiko funtsa izan ziren elementuak baztertuta gelditzen ari zirela ikusi zuten eta. Urte askoan aurkitu eta bildutako materiala 2001ean erakutsi ahal izan zuten sarritan amestu zuten museoan.

| ORDUTEGIA |
| --- |
| Astelehenak: **Itxita** |
| Asteartetik ostiralera: **09:00-14:00/16:00-19:00** |
| Larunbatak eta jaiegunak: **11:00-14:00/16:00-19:00** |
| Igandeak: **11:00-14:30** |

| PREZIOAK |
| --- |
| Orokorra: 3€ |
| Bisita gidatuak: 4€ |
| Murriztua: 2€ (8-12 urte bitarteko umeak, ikasleak, erretiratuak, minusbaliatuak) |
| Doan: 8 urtetik beherakoak eta langabetuak |

**INGURUAK**

- Trapagaran: Reinetako funikularra
- La Arboleda
- Muskiz: Pobaleko burdinola
- Kobaron: Itsaslur bidea

**www.meatzalde.eus** **946 36 36 82**

# BERTSO-TXAPELDUNAK

Bertsolaritza ahozko euskal literaturaren adarretako bat da. Gure kulturan oso garrantzitsua. Horregatik, iruditu zaigu interesgarria gaur egun txapeldunak diren bertsolariei buruzko artikulua idaztea. Txapelak lau urtean behin jokatzen dira.
Inazio Eizmendi Manterolak, “Basarri”-k irabazi zuen txapela lehen Bertsolari Txapelketa Nagusian 1935ean. Euskaltzaleak eta Eusko Gaztedi elkarteak antolatu zuten eta hurrengo urtean errepikatu izan zen. Hala eta guztiz ere, ez zen 1960era arte hurrengo txapelketa antolatu. Euskaltzaindiak antolatu zuen eta Basarri izan zen txapeulduna berriro. Euskaltzaindiak sei txapelketa antolatu zituen eta 1986tik gaur arte Bertsozale Elkarteak antolatzen ditu. Hauek dira azken urteetako txapeldunak.

## AMETS ARZALLUS (Euskal Herriko txapelduna)



Donibane Lohitzunen jaio zen, 1983ko azaroaren 9an.Jexux Arzallus bertsolariaren semea da. Txikitatik Hendaian bizi izan da. Kazetaritza ikasi zuen, eta Argia aldizkarian eta Euskadi Irratian kolaboratzen du. Gainera, Hendaiako bertso-eskolan lan egiten du.
2000ko Nafarroako txapelketan txapelduna izan zen. Iparraldeko Xilaba Bertsolari txapelketa ere irabazi du 2008, 2010 eta 2012 urteetan. Euskal Herriko Bertsolari Txapelketa Nagusian 2005ean finalera heldu zen, 2009an bigarrena izan zen, eta 2013an txapeldun izan zen.



## FREDI PAIA (Bizkaiko txapelduna)



Algortan jaio zen, 1981ean. Amak euskara jakin ez arren, euskaraz ikasi zuen, eta 2000. urtetik aurrera Bizkaiko bertsolari txapelketa guztietan finalera heldu da.
Gainera, bertsolaritzarekin lotutako aktibitate berritzaile askotan parte hartu du.
2014an Bizkaiko txapelduna izan zen.

## MANEX AGIRRE (Arabako txapelduna)



Aramaion jaio zen, 1982an. Euskara-teknikari bezala lan egiteaz gain, Legutioko bertso-eskolako irakaslea da.
2013an Arabako txapela lortu zuen. Aurrekoa ere berak lortu zuen 2011n.

## JULIO SOTO (Nafarroako txapelduna)



Gorritikoa da, eta 1987an jaio zen. Nekazal Ingenieritza eta Euskal Filologia ikasi zuen, eta zutabegilea da Berria egunkarian. Iruñeko bertso-eskolan hezia izan zen. Han hasi zen parte hartzen Nafarroako txapelketan, eta aurtengo saria irabazi baino lehen, beste txapelketa batzuetan jokatu du. 2015eko txapelduna dugu.

## SUSTRAI COLINA (Iparraldeko txapelduna)



Lapurdikoa da (Urrutiakoa). 1982ko urriaren 20an jaio zen. Kazetaria da, eta bertso-irakaslea. Zuzenbidea ere ikasi zuen. Pilotazale amorratua da, esku huska pilotan aritu zen bost urte zituenetik hamabi izan arte. 2014ko Iparraldeko Xilaba txapelketako txapelduna da.

## AITOR SARRIEGI (Gipuzkoako txapelduna)



Beasainen jaiota. Informatika Ingenieritza ikasi zuen, eta Armentiako ikastolan irakasle lan egiten du.

2011n Gipuzkoako txapelketa irabazi zuen. (Dena den, aurtengo txapelketa jokoan da, eta abenduaren 19ra arte ez dugu jakingo zein den txapelduna. Aitor Sarriegik ez du parte hartu azkeneko honetan).

## MAIALEN LUJANBIO (Euskal Herriko lehenengo emakume txapelduna)



Nahiz eta gaur egun txapela ez eduki, aipagarria da. 2009an lehenengo emakume txapelduna izan zen, eta azkeneko txapelketan bigarrena atera zen, Amets Arzallusen atzean.

1976an jaio zen, eta hernaniarra da. 2003. Urtean Gipuzkoako txapelketa irabazi zuen, eta lautan lortu du Txapelketa Nagusiko azken saiorako sailkatzea. Esan bezala, 2009an Txapelketa Nagusiko lehenengo emakume txapelduna izan zen.

## TALOA

***Santo Tomas eguna oso hurbil daukagunez, taloari buruzko historioa eta errezata zuekin partekatzea pentsatu dugu. Ea animatzen zareten taloak egiten!***

XIV. menditik aurrera, Gipuzkoan gehien bat, Ameriketarako emigrazioa gertatu zen. Terreno gorabeheren eta prezipitazioaren ondorioz, ezinezkoa zen garia eta garagar ereitea. Horrela hasi ziren artoa lantzen taloak egiteko, baserrietan eguneroko ogi moduan erabiltzen zuten eta soberan zegoena gauerako uzten zuten esne zopa afaltzeko. Sutan egiten zen metalezko plaka batean.

XX. mendean gari ogiaren hedapenak taloaren kontsumoarekin bukatu zuen. Taloak egunero jatetik egun berezi batzuetan jatera pasatu zen. Gaur egun ohikoena txistorrarekin jaten da, txakoli edo sagardoarekin. Sukaldearen fusioarekin osagai berri batzuk sar genituzke; gazta, txolatea eta abar. Janariari lagunduz, opiltxo moduan; txistorrarekin, gaztarekin... eta pizza ere egin dezakegu. Gogoratu esaera zaharrak dioena: “Talo beroak gazta du jaki, ori edozeinek badaki”.

San Tomas azokan, abenduaren 21ean , gauzarik inportanteenetariko bat taloa da. Etxe batzuetan, batez ere Nafarroan, eguberri egunean jatea tipikoa da. Artoak ez du glutenik, beraz zeliakoek jan ahal dute.



Taloek, artoaren irinez eginda daudenez, energetikoa du funtzio nagusi. Aberatsak dira karbohidratoetan eta almidoian, baina koipe eta proteina gutxi dituzte. Sarritan janari koipetsua eta azukrea duten janariaz laguntzen dira, horregatik ekarpen kalorikoa igotzen da. Berriz, jaietan edo egun berezietan hartzen baditugu ez dugu gure gorputza nabarituko.

# Errezeta

| Osagaiak |
| --- |
| 350 gr arto irina |
| Gari irina |
| Gatza |
| Ura |



*NOLA EGIN*

*Lehendabizi, arto irina eta gatzarekin sumendi moduko bat egin.*

*Erdian zulotxo bat egin eta ur epela bota.*

*Ondo nahastu dena, bigun egon arte, baina kontuz bigunegi gera ez dadin.*

*Orea bola txikietan zatitu eta gari irinaren laguntzaz forma ematen joan.*

*Bukatzeko plantxa bero-bero jarri eta gari irinez zipriztindu.*

*Taloak bota eta listo. Zure gustura konbinatu.*





# Horoskopoa



## KAPRIKORNIO *(Abenduaren 21etik Urtarrilaren 20ra)*

***OSASUNA:*** Kontuz hotzarekin, bitaminak hartu.

***DIRUA:*** Lan ona aurkituko duzu.

***MAITASUNA:*** Bikote berezia aurkituko duzu.

***ASTEKO EGUNA:*** Asteartea.



## AKUARIO *(Urtarrilaren 21etik Otsailaren 20ra)*

***OSASUNA:*** Mukiak edukiko dituzu.

***DIRUA:*** Inbertsioak egiten badituzu, zorte ona izango duzu.

***MAITAZUNA:*** Ezusteko ona izango duzu.

***ASTEKO EGUNA:*** Astelehena.



## PISZIS *(Otsailaren 21etik Martxoaren 20ra)*

***OSASUNA:*** Kirol gehiago egin behar duzu.

***DIRUA:*** Kontuz erosketekin.

***MAITASUNA:*** Aste honetan aurkituko duzu maitale berria.

***ASTEKO EGUNA:*** Igandea.



## ARIES *(Martxoaren 21etik Apirilaren 20ra)*

***OSASUNA:*** Mugitu ipurdia eta joan mendira.

***DIRUA:*** Herentzia bat kobratuko duzu.

***MAITASUNA:*** Momentu oso txarra da. Etorriko dira garai hobeak.

***ASTEKO EGUNA:*** Ostirala.



## TAURO *(Apirilaren 21etik Maiatzaren 20ra)*

***OSASUNA:*** Kontuz euriarekin, ez egin irrist...

***DIRUA:*** Garai honetan zorte txarra izango duzu loteriarekin.

***MAITASUNA:*** Zure bizitzako maitalea aurkituko duzu.

***ASTEKO EGUNA:*** Osteguna.



## GEMINIS *(Maiatzaren 21etik Ekainaren 20ra)*

***OSASUNA:*** Kontuz buruarekin eta belaunekin.

***DIRUA:*** Gehiegi gastatzen ari zara.

***MAITASUNA:*** Bidaia erromantikoa egingo duzu.

***ASTEKO EGUNA:*** Asteazkena.

# Horoskopoa



## KANTZER *(Ekainaren 21etik  Uztailaren 20ra)*

***OSASUNA:*** kontuz eguraldiarekin! Burutik beherakoa hartuko duzu eta!.

***DIRUA:*** Zorte ona edukiko duzu loterian.

***MAITASUNA:*** Bikotea aldatu behar duzu.

***ASTEKO EGUNA:*** Ostirala.



## LEO *(Uztailaren 21etik Abuztuaren 20ra)*

***OSASUNA:*** Kontuz begiekin, gorputzeko atal ahulenak dira eta.

***DIRUA:*** Murrizketak egin behar dituzu.

***MAITASUNA:*** Ez da momenturik onena, segur aski bakarrik geratuko zara.

***ASTEKO EGUNA:*** Igandea.



## VIRGO *(Abuztuaren 21etik Irailaren 20ra)*

***OSASUNA:*** Egun onak eta egun txarrak edukiko dituzu.

***DIRUA:*** Diru asko duzu eta gastatu behar duzu.

***MAITASUNA:*** Zu pozik egongo zara zure bikotearekin.

***ASTEKO EGUNA:*** Igandea.



## LIBRA *(Irailaren 21etik Urriaren 20ra)*

***OSASUNA:*** Kontuz bihotzarekin, arazoak izan ahal dituzu.

***DIRUA:*** Hilabete honetan lasai ibiliko zara.

***MAITASUNA:*** Zure bikoteak laztanak behar ditu.

***ASTEKO EGUNA:*** Larunbata.



## ESKORPIO *(Urriaren 21etik  Azaroaren 20ra)*

***OSASUNA:*** Zaindu osasuna. Kontuz turroiarekin.

***DIRUA:*** Ez jokatu loterian.

***MAITASUNA:*** Ez daukazu arazorik.

***ASTEKO EGUNA:*** Asteartea.



## SAGITARIO *(Azaroaren 21etik Abenduaren 20ra)*

***OSASUNA:*** Egin ezazu kirola.

***DIRUA:*** Lanik ez daukazu, baina herentzia bat kobratuko duzu.

***MAITASUNA:*** Bihotza apurtuko dizute.

***ASTEKO EGUNA:*** Osteguna.

BOGAko pitonisak

# DENBORA-PASA

## HUTSUNEAK BETE

| | |
|---|---|
| Etxebarri ez da handia, nolakoa da? | _ _ _ _ _ _ |
| Zenbat auzo dauka Etxebarrik? | _ _ _ _ _ |
| Zein da alkatearen abizena? | _ _ _ _ _ A |
| Non dago Euskaltegia? | _ _ _ _ _ S _ _ _ _ _ |
| Bekosolo ez da itxusia, nolakoa da? | P _ _ _ _ _ _ |
| Zer dago EuskoTren geltokiaren ondoan? | _ _ I _ _ |
| Nola deitzen da eliza? | _ O _ _ _ _ _ _ _ |
| Non daude igerilekuak? | _ _ _ _ _ _ _ _ _ _ _ N |
| Zer dago igerilekuaren ondoan? | H _ _ _ _ _ _ _ _ |
| Zein da Etxebarriko ibaia? | _ E _ _ _ _ _ _ |
| Zein da Etxebarriko musika eskoralen izena | _ _ _ _ _ _ _ _ _ L _ |
| Zenbat urte ditu Etxebarrik? | _ _ _ _ _ _ _ _ _ E _ _ _ _ _ |

**BILATU 7 LANBIDE**

## HITZ SOPA



| S | E | A | I | R | A | T | E | Z | A | K | A | R |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| D | U | P | R | E | I | T | J | E | P | A | Z | U |
| P | S | F | B | A | A | E | A | R | I | Z | O | N |
| O | K | A | S | N | Z | A | I | B | A | E | D | T |
| S | R | P | A | Z | S | I | N | I | E | A | E | E |
| T | I | I | Z | O | A | N | E | T | D | E | D | S |
| A | O | A | A | K | L | M | R | Z | E | A | O | F |
| R | S | S | U | I | T | U | A | A | M | R | S | E |
| I | T | G | T | O | R | S | T | R | A | I | T | J |
| A | E | L | S | A | K | A | R | I | G | A | E | I |
| Z | A | T | O | P | I | T | D | A | I | Z | B | M |
| S | I | T | I | T | R | G | J | L | N | I | O | A |
| A | N | D | A | E | A | A | R | T | A | T | Y | I |
| N | E | B | Z | A | S | I | E | U | I | K | L | O |
| A | R | A | S | I | T | J | K | E | K | I | U | L |
| P | A | Z | A | N | T | U | I | O | N | K | E | S |
| I | Z | O | K | I | N | A | N | E | B | Z | A | E |

**1. urratseko guraso taldea**

# LEHENENGO EGUNA EUSKALTEGIAN

Gure lehenengo egunean urduri gaude

Atetik sartzen gara eta gure ikaskideak ezagutzen ditugu

Irakasleak euskaraz hitz egiten du!!!

Baina Vero, gure irakaslea, oso jatorra da.

Laguntza!!!

Ez dugu ezer ulertzen.

Baina Verok poliki-poliki hitz egiten du.

Hasteko:

Nor zara zu?
Nongoa zara?
Non bizi zara?

Klasea amaitu da eta oso pozik irteten gara.

Bihar beste egun bat izango da.

**1. urratseko guraso taldea**

UDALA AYUNTAMIENTO

# EUSKARAREN ORDUA DA

## es la hora del euskera

EZ UTZI DENBORA PASATZEN!

JARRI ZURE ERLOJUA ORDUAN ETXEBARRIKO EUSKALTEGIAN




NO DEJES PASAR EL TIEMPO

PONTE EN HORA EN EL EUSKALTEGI DE ETXEBARRI

www.etxebarrikoeuskaltegia.com

Bekosolo parkea

Txalet horia / Casa amarilla

944 262 802 • euskaltegia@etxebarri.net

Etxebarriko Euskaltegia

BIKAINTASUNAREKIN KONPROMISOA
COMPROMISO CON LA EXCELENCIA

ULIBARRI euskaltegia